# ATAZA: IRAKURTZALETASUNA

Ataza honetan, zeure irakurtzeko ohiturez gogoeta egiten eta zeure irakurle-profilaren ezaugarriak bereizten lagundu nahi dizugu. Garbi dago irakurketa oso atal garrantzitsua dela ikaskuntzaren munduan eta euskara-ikasleok ere horretaz ohartu eta irakurketari etekin didaktikoa ateratzen ahalegindu beharko zenuketela.

## 1

- Hasteko, Bertatik Bertara telebista-saioak Tolosan irakurtzaletasunari buruz egindako inkestatxoa ikusiko duzu. Horren bidez, zera jakin nahi izan dute: zenbat irakurtzen dugun euskaldunok; mesanotxean zenbat liburu ditugun; irakurtzen ditugun…
- Erreparaiezu erantzunei eta jaso itzazu beheko koadroan.

**Zer eta zenbat irakurtzen dugu?**

| Izenburua gogoratzen dute? bai/ez | Irakurtzen dute? | Generoa | Zenbat? | Euskaraz ala erdaraz? |
|---|---|---|---|---|
| | | | | |

- Orain egin iezaiozue elkarri inkestatxo berbera.
- Ondoren, pentsatu puntu hauetaz:
  - Asko ala gutxi irakurtzen duzue? Zer da asko/gutxi irakurtzea?
  - Zein literatur genero duzue gogokoen? Zergatik?
  - Liburu-mota berberak irakurtzen dituzue euskaraz eta erdaraz?
- Berdin irakurtzen duzue bi hizkuntzetan? Azaldu

## 2

**Irakurketaren gaineko gogoeta: mahaingurua**

- Orain, nolako irakurlea zaren zehazten saiatu behar duzu. Ondorengo zerrendan hainbat baieztapen aurkituko duzu, irakurtzerakoan izan ohi ditugun ohitura, joera, arazo, eta abarrei buruzkoak. Zure lana baieztapenak banan-banan aztertu, eta zuri gertatzen zaizunarekin bat datozen erabakitzea izango da. (Norberaren profila izeneko zutabean “bai” edo “ez” ipini behar duzu.)



| BAIEZTAPENAK | NORBERAREN PROFILA | | IRAKURLE ESTANDARRAREN PROFILA | |
|---|---|---|---|---|
| | BAI | EZ | BAI | EZ |
| 1. Irakurleok erosten ditugun liburu guztiak irakurtzeko joera izaten dugu. | | | | |
| 2. Gutako askok ez du liburu bat bera ere irakurtzen urte osoan. | | | | |
| 3. Aisialdirako nahiago ditugu, aukeran, entretenimendu: "pasiboak" (musika entzun, telebista ikusi). | | | | |
| 4. Telebista irakurketaren etsaia da, denbora kentzen digu eta. | | | | |
| 5. Gaur egun, batez ere, helburu ludikoarekin irakurtzen dugu, hau da, ondo pasatzeko. | | | | |
| 6. Askotan literatur liburuen zatiak baino ez ditugu irakurtzen. | | | | |
| 7. Kasu gehienetan gutxi irakurtzen dugu gutxi ulertzen dugulako. | | | | |
| 8. Liburu batek gustura uzten gaituenean, aseta geratzen gara eta ez dugu denbora luze batean beste ezer irakurtzeko gogorik izaten. | | | | |
| 9. Musika asko entzuten dugunok denbora gutxiago daukagu irakurtzeko. | | | | |
| 10. Literatura ondo pasatzeko irakurtzen dugu, besteren esperientziaren berri izan eta zoriontsuago izateko. | | | | |
| 11. Autorea ezagutuz gero, gusturago eta errazago irakurtzen dugu. | | | | |
| 12. Literaturaren alderdi estetiko--ludikoa interesatzen zaigu, ez testuen azterketa linguistikoa. | | | | |
| 13. Zenbat eta gazteagoak izan, orduan eta joera handiagoa daukagu testu errealistak irakurtzeko. | | | | |



| BAIEZTAPENAK | NORBERAREN PROFILA | | IRAKURLE ESTANDARRAREN PROFILA | |
|---|---|---|---|---|
| | BAI | EZ | BAI | EZ |
| 14. Gizonezko/emakumezkoen irakurtzeko gustuak gizarte-rolekin lotuta daude, adibidez, gizonek rol konpetitiboagoa dutenez, ekintza-nobelak aukeratzen dituzte. | | | | |
| 16. Badaude klasiko batzuk derrigorrez irakurrita eduki behar ditugunak, adibidez, El Quijote. | | | | |
| 15. Aukera egiterakoan asko begiratzen diogu liburuaren itxurari (lodiera, letraren neurria, irudiak, etab.). | | | | |
| 17. Liburuak ukitu eta lehendabiziko orriak irakurrita bakarrik ezin dugu informazio asko atera liburuari buruz. | | | | |

- Ondoren, ETBn gai horretaz egindako solasaldi baten zenbait pasarterekin egindako montajea ikus-entzungo duzue. Aurreko puntuan hizpide izan ditugun puntu berberak agertuko dira aditu horien komentarioetan ere. Esaten dituzten gauza guztiak aintzat hartuta, gaur egungo irakurle estandarraren gutxi gorabeherako profila osatzen ahaleginduko gara.

Itzul gaitezen, beraz, lehengo baieztapenetara, eta, ea bideo-pasartea ikus-entzun ahala, bigarren zutabea betetzen duzuen, irakurle estandar horren ezaugarriak ondo islatzen dituztenetan “bai” ipiniz, eta besteetan “ez”.

- Bukatzeko, konpara itzazu bi zutabeak (norberaren profila/irakurle estandarraren profila) eta, deigarrienak iruditzen zaizkizun puntuak kontuan hartuta, bizpahiru esalditxo idatzi, konklusio gisa.

1. ______________________________
2. ______________________________
3. ______________________________

## 3

- Ekar dezagun gogora berriro mahainguruan esandako hau: Kasu gehienetan gutxi irakurtzen dugu, gutxi ulertzen dugulako .

# 2. BIDEO-PASARTEAK

## ATAZA: IRAKURTZALETASUNA



### 1. BIDEO-PASARTEA

■ **Iraupena: 3'27"**

| | |
|---|---|
| **AURKEZLEA** | Tira, eh... gaur liburuen aurkezpen berezi-berezirik ez dizuegu egun... egingo baina liburu mordoa datorkigu Durangoko azoka dela eta. Aizue, eta guri galdera bat bururatu zaigu, eh... hasieran ere esan dizuet, saioaren hasieran. Zenbateraino irakurtzen dugu euskaldunok? Hortxe mesanotxean, ohe ondoko mahaitxo horretan zenbat liburu ditugu eta baldin baditugu, irakurtzen al ditugu? Entzun itzazue Tolosako erantzunak. |
| **ELKAR** | Zer liburu daukazu momentu honetan mesanotxean? |
| **INKEST. 1** | Mesanotxean? El Médico. Noah Gordon-ena. |
| **ELKAR** | Eta nolakoa da? |
| **INKEST. 1** | Bueno, oso polita, niretzako behintzat. Gustagarria irakurtzeko. |
| **INKEST. 2** | Ba, La pasión turca. |
| **INKEST. 3** | Begira, batere ez zait gustatzen irakurtzea, baina daukat bat... |
| **INKEST. 4** | Bueno... asko dauzkat. |
| **INKEST. 5** | Ba, ingeleseko bat. Robinson Crusoe-rena. |
| **INKEST. 6** | Ez daukat. |
| **ELKAR** | Irakurtzen duzu? |
| **INKEST. 6** | Ezer ez. |
| **ELKAR** | Ez zaizu gustatzen, ala? |
| **INKEST. 6** | Ez daukat denborarik irakurtzeko. |
| **INKEST. 7** | Ja, ja. Deming. |
| **ELKAR** | Eta nolakoa da? |
| **INKEST. 7** | Kalitateaz hitz egiten du. |
| **INKEST. 8** | Orain ezer ez, baina orain dela 15 egun edo, ba, normal bat, biografia horietako bat eta horrela. |
| **INKEST. 9** | Eh... Antonio Gala... de Antonio Gala, ja, ja, ja. |
| **INKEST. 10** | Agatha Christie-rena. |
| **ELKAR** | Baina izenburua? |
| **INKEST. 10** | El caso de Stilles, edo horrelako zerbait. |
| **INKEST. 11** | Jo, orain pila bat nago irakurtzen. Nago irakurtzen La busca... eskolarako. |
| **INKEST. 12** | Ez naiz oroitzen momentu honetan. Bi edo hiru edukitzen ditut baina... ez naiz oroitzen. |
| **ELKAR** | Eta orain irakurtzen ari zarena, zein da? |
| **INKEST. 12** | Nola? |
| **ELKAR** | Ze liburu irakurtzen ari zara orain? |
| **INKEST. 12** | Eh... Ez, errebista bat ari naiz irakurtzen. |
| **ELKAR** | Eta jakin daiteke ze errebista? |
| **INKEST. 12** | Quo. |
| **ELKAR** | Zer nahiago duzu gehiago irakurtzea, aldizkariak edo liburu... horrela potolo, mordoa. |
| **INKEST. 12** | Potolo liburuak onak direla esaten dute, baina prentsa asko gustatzen zait, eh? Eta denetatik pixka bat. Orain liburuarekin hasi berria naiz. |

*** Bertatik bertara saioa. ETB.



| | |
|---|---|
| ELKAR | Zer gaietako liburuak irakurtzen dituzu? |
| INKEST. 13 | Ba, edozein gaiaz. Ba, lagunekin komentatzen diet aber badaukaten liburu guapo bat irakurtzeko, eta uzten didate eta... ya está. |
| INKEST. 14 | Bueno, gehienak erromantikoak. Amodiozkoak-eta, ez zaizkit gustatzen. |
| ELKAR | Eta, zenbat liburu irakurtzen dituzu urtean zehar? |
| INKEST. 15 | Bueno, umeekin jada, gutxi. Lehen asko, baina jada, umeekin gutxiago. Oso gutxi. |
| INKEST. 16 | Hiru-lau bat. |
| INKEST. 17 | Ah, zenbat liburu? Hiru edo horrela. |
| INKEST. 18 | Ba, ez dakit, hiru-lau. |
| INKEST. 19 | Ba, ez dakit. Hiru, lau edo bost. Ez dakit. |
| INKEST. 20 | Eske, ez zait gustatzen irakurtzea. |
| INKEST. 21 | Hamar. |
| INKEST. 22 | Gutxi gorabehera, zortzi bat. “Ma o meno” |
| INKEST. 23 | Gutxi. Bost bat edo horrela. |
| INKEST. 24 | Ez dakit, 15-20 liburu bai. Ez dakit. Igoal gehiago. Ez dakit. Asko gustatzen zait irakurtzea. |
| AURKEZLEA | Tira, eh? Ikusten duzue. Nik esku artean sei ere badauzkat baina nik ere, egia esan behar badizuet, asti gutxi samar daukat irakurtzeko eh? Besteei kontuak eskatzen erraza da baina gero norberak egiten duena hori ere beste kontu bat. Dena den, aitzakia polita da, orain Gabonetarako, Olentzero edo Erregetarako liburu bat oparitzea eta euskaraz baldin bada... Hor jendeak... entzun dugu, eh? asko eta asko behintzat erdaraz irakurtzen duela. Euskarazko liburuak aukeran asko daude, ba askoz hobe, noski. Aizue, baina gaur, Santa Barbara eguna da, aizue eta muñeka edo panpina oparitzea ere libre da. Ume txikiei asko gustatzen zaizkie, Barbie ere hortxe dago. Bihar arte. Adio. |

# ATAZA: IRAKURTZALETASUNA



**2. BIDEO-PASARTEA: MAHAINGURUA******

■ **Iraupena: 18'30"**

**ANTTON ARANBURU**
**Mª JOSE OLAZIREGI**
**PELLO ELLAKURIA**
**MARIBI LEGARRA**

**A.A.** Ba, Durangoko liburu eta disko azokaren bueltan hango munduarekin zerikusirik duen gai bat aukeratu dizuegu gaurko LAGUN ARTErako: Irakurketaren gaia. Askotxo izan gintezke gure liburu edo liburu sorta eskuetan etxeratu garenak baina orain beste ezkutuko lan hori, lan pertsonal hori geratzen zaigu. Liburu horiek irakurtzea.

Ba, ariketa horren zer-nolakoak aztertu nahi genituzke gaurko LAGUN ARTEAN. Hau da, gure irakurketa zaletasunak, ohiturak, jokabideak eta abar. Zer irakurtzen dugun, zenbat irakurtzen dugun, zerk eraginda eta abar. Horixe planteatzera gatoz irakurle on izateak dituen bentajak aldarrikatuz.

Itxuraz aldatu zaigun platoan, hiru solaskide ditugu. Bakoitzak bere sailean pertsona aditua. Gurekin, lehen lehenik Mª Jose Olaziregi, irakaslea, hizkuntz irakaslea, eta, horretaz gainera, irakurketari buruzko tesia bat ere eskuartean duena. Gabon, Mª Jose.

**Mª J.** Gabon!

**A.A.** Emakumea baita ere gure bigarren gonbidatua: Maribi Legarra. Literatura bera ez ezik irakurlearen ohiturak ere ondotxo ezagutzen dituen liburu dendaria. Gabon Maribi.

**MARIBI** Gabon!

**A.A.** Eta azkenik Pello Ellakuria, Udako ikastaroen zuzendaritzan ezagutzen dugu, baina gaur gaurkoz Euskadiko Eskolako Kontseiluburua. Gabon, Pello.

**P.E.** Gabon, bai.

**A.A.** Irakurketa-kontuak, beraz, gaurko LAGUN ARTEAN. Hasieran aipatutako irudi horren aurrean jar gintezke. Hau da, liburu bat edo beste, edo gehiago, liburu-sorta bat eskuetan dugula etxeratuko ginen gutako asko. Zer gertatuko da, ordea, orain liburu horien ibilbidearekin. Azken batean, irakurriko al ditugu ala hortxe geratuko dira apalen batean utzi ditugulako, gero horiez ahaztu garelako, hortxe geratuko dira umezurtz. Mª Josek du hitza. Liburu baten atzean ez omen dago irakurle bat, esaten zenuen.

**Mª J.** Bai, bueno. Erantzuna pentsatzen dut topiko bihurtu dela gaur egun, ezta? Beti entzun izan dugu gure artean, ba, gutxi irakurtzen dela eta hau ez dela kontu berria. Egia esan, ba, mende honetan zehar, jada mende hasieratik, adituak oso kezkatuta egon izan dira irakurketa urritasunarengatik, ezta? Orduan, alde honetatik, bai, noski, erosle baten atzean ez dago beti irakurle bat. Hor badaude, gainera, oso ikerketa bitxiak, zentzu honetan egin direnak eta esaten da, ba, Espainian erosten duten... liburu bat erosten duen %60ak soilik irakurtzen duela. Portzentaia hori izugarri igotzen dela Alemanian, alegia, erosleek gehiago irakurtzen dutela, eta nabarmen jaitsi, ba, hirugarren munduko edo, ez dakit, Hegoameriketako hainbat estatutan. Bueno, hau kontu zaharra da. Nik uste dut argi dagoela gure aisialdian beste hainbat jarduera direla nagusi, ezta? Hemen, inguruko herrialde guztietan, Europan, gaur egun irakurketak nahiko leku eskasa dauka. Gailentzen dena aisialdi pasiboa, hau da, telebista ikustea edo musika entzutea, eta irakurketa eta beste hainbat ekintza, ba, nabarmen urriago praktikatzen dira, ezta? Arrazoiak? Ba,

**** Lagun artean saioa. ETB.



pentsatzen dut asko daudela eta nahi baduzue aurrerago edo hitz egingo dugu honetaz. Eta gero bereziki baita ere daude desberdintasunak sexuaren arabera. Hau da, gizonak kirolzale eta bideozaleagoak dira, emakumezkook gehiago irakurtzen dugu, eta zinema eta, ba, musika ere badirudi, ba, gehiago ere gustatzen zaigula. Bueno, dira pixka bat datu nahiko ezagunak. Orokorrean, eta bukatzeko, ba Euskal Herrian egin diren hainbat inkestetan, ba, badirudi, bereziki Komunitate... Euskal Komunitate Autonomoan %40ak ez duela inoiz libururik irakurtzen urtean eta kopuru hau nabarmen igotzen da estatuan, espainiarren %50ak ez baitu liburu bat ere irakurtzen urtean, edo espainiarren %20ak ez baitauka liburu bakar bat etxean.

**************

Dena dela, telebistaren inguruan topiko bat dago nahiko zaharra eta ezaguna. Hau da, pentsatzen da telebista dela liburuaren etsaia, edo hori bereziki 60. hamarkadan halaxe defendatzen zen eta ez du zertan izan behar telebistak irakurketaren etsaia, telebista ona bada, noski. Beste bat izango litzateke daukaguna... daukagunak irakurtzaletasunak bultzatzen duen ala ez. Dudarik ez dago ezetz.

MARIBI Baita ere esan beharrekoa iruditzen zait... esan beharrekoa da denbora-arazoa ere badela, eta denbora hori, ba, askotan telebistak, ba, kendu egiten diola, ez dago denb...

**************

Zein liburu aukeratzen den hori askotan funtzezkoa da eta gero, beste aldetik, orain dela gutxi egon da maratoi bat, adibidez, Gasteizen eta pasatu dituzte, ez dakit ziren 24 ordu edo irakurtzen. Eta ume bati galdetzen zioten gero, aizu, eta zuri hizkuntza, zer... ondo... zergatik iruditzen zaizu irakurri behar duzula? Eta esaten zuen: ba nere hitz egiteko, zera, bokabularioa, eta, bueno, hitzak eta hazitzeko, eta handiagoa izan dezadan, ezta? Ez zuen inondik inora aipatzen ondo pasa...

P.E. Ondo pasatzeko.

MARIBI Bai, hori da. Nik uste dut hor dagoela.

Mª J. Hori, aldaketa hori, kuriosoa da, eh? Gaur egunean Frantzian, esate baterako, egin zen oso ikerketa interesgarri bat unibertsitarien artean, ezta? 15.000 unibertsitarien artean. Ea zer irakurtzen zuten eta zergatik, eta ikusten da argi aldatu dela irakurketaren kontzeptua bera. Hau da, plazerrez irakurtzen duen oso jende gutxi dago, gaur egun. Irakurketak dauka helburu formatzaile bat, edo informatzaile bat. Irakurtzen dugu, bereziki gazteek, ba gehientxoenek seguraski, entretenitzeko, baina oso portzentaia altu batek bere hizkuntza-maila hobetu eta kultura hobetzeko. Eta gero, beste fenomeno bat ematen ari dena ere da ez direla testuak, liburuak osorik irakurtzen, hau da, gero eta gehiago ematen da...

P.E. Kapitulu bat,

Mª J. Kapitulu bat, bai... selektiboagoa. Edo kontsultazko irakurketa da momentu honetan gailentzen dena, ezta?

P.E. Baina beste puntu bat bada hor, eskolan bertan irakurtzeari ekiten badiogu, azken momentuan ikasleak gero eta erraztasun gehiago dauka eta gehiago ulertzen du. Ze, azken momentuan gertatzen dena da, zuk telebistan ikusten duzun, dauzkazun irudiekin, horko mezua jaso egiten duzu. Baina liburua ateratzen duzu, irudiak zuk jarri behar dituzu, eta segun ze irudi jarri hor, edo ze loturak egin daukazunarekin ulertzen duzu edo ez duzu ulertzen. Baina eskolan, nik uste dut, azkarregi irakurketa ondo ikasitzat ematen da. Eman dezagun, adibidez, 7-8 urtekoekin ari gara, ba, irakurketa lantzen. Eta esaten dugu, bueno! jada irakurtzen dute. Zer irakurtzen dute? Jarraitu egin beharko nuke irakurketa ikasten 40 urterekin, nik 53 dauzkat eta oraindik, uste dut, zerikasi asko daukadala. Eskolak ez baluke utziko hori eta ez bakarrik hizkuntza aberasteko baizik eta gauzak ikasteko, formatzeko eta ondo pasatzeko baita ere. Nik etxean ikusi dut: baina, zuek ez duzue ondo pasatzerik liburu batekin? Ba... Horrek zer esan nahi du? Ohitura ez dela irakurtzearena. Eta azken momentuan zaila egiten da gutxi irakurtzen ba... gutxi ulertzen bada, gutxi irakurtzen da. Zenbat eta gutxiago irakurri gutxiago ulertzen da, erraztasun gutxiago dago.

Mª J. Bai. Praktika eskatzen du baita ere.

**************

MARIBI Liburuarengana hurbiltzeko dauden joerak ere ezberdinak dira, ezta? Ba, batzuek entretenimentua bakarrik
nahi dute, ezta? Entretenitzeko eta denbora on bat pasatzeko. Beste batzuek zerbait gehiago bilatzen

dute, beren, ez dakit, bizitzari buruzko pentsamenduak, eta, ez dakit, filosofikoak eta hortxe, batzuk poesiaren bidez, beste batzuk filo... Hurbilketak oso ezberdinak dira, eta nik uste dut, gainera... Delibesen emazteak esaten zuen, ez da, obra batean agertzen da, liburu batek, esaten zuen berak, beste batera eramaten zaitu, ze lehenengoan galdera batzuei erantzuna bilatzen joan zen liburuetara, eta horrek beste batera, eta horrek beste batera. Eta hor sartzen zara katea batean... Eta nik uste dut, katea horretan sartzen dena, jada ez dela ateratzen, ezta?

**************

**A.A.** Eta gero, albernatibak daude, ez? Ugari eta erakargarriak, eh?

**Mª J.** Musikarena.

**A.A.** Elektronika, informatika...

**Mª J.** Momentu honetan musikarena kuriosoa da. Jendeak esaten dute liburuaren etsairik edo aipatu beharko balitz, eh, gaur egun, musika izango litzatekeela, ezta? Hau da, bereziki gazteek beren aisialdian gogoko dutena da musika entzutea. Eta orduan, oso baieztapen bitxiak ere nik irakurri ditut azkenaldi honetan, Frantzia aldean esate baterako, azkenaldi honetan kezkatuta daude fenomeno honekin. Hau da, gure etsaia orain ez da telebista, musika. Eta orduan, nola kendu protagonismoa horri, ba hori irakurtzaletasuna pixka bat sustatzeko, ezta? Eta Siadeco-ren azken ikerketan ere Euskal Herrian ikusten da kultur kontsumoaren barruan telebistaren ondoren musikarena dela nagusi gazte euskaldunen artean, alfabetatuen artean.

**************

**A.A.** Hor geratzen dira, ez? Ze premia dago, ba, irakurtzeko edo zergatik irakurri behar da, ez? Azken batean hori erantzun ezinik gabiltzala ematen du, ez? Esan eta esan irakurri egin behar dela, baina azken batean...

**Mª J.** Bueno, erantzun asko eman izan zaizkio tradizionalki. Batzuek plazerrarekin lotu dute. Badago ere, ba, plazerra eta erotismoa lotu izan duenik. Ba, Roland Barthes eta halakoak Frantzian. Nik uste dut, ba, guztia, guzti hau egiten dugula, ba, ondo sentitzeko, edo behar edo esplikazio asko eman dakizkioke formatiboez aparte, norberaren, eh? Ez dakit.

**************

**MARIBI** Liburuetan ia den-dena dago, ezta? Edozein gai aukeratzen duzula, edozein galdeketa baldin baduzu galdeketa bat, ia-ia bizi oso bat dago, ezta? Eta esperientzia, beste guztien esperientzia jasota dauden gauza bat da. Orduan askotan, ba, ez dakit, hurbiltzea da eta...

**A.A.** Plazerraz ari gara baina gogoan dut Donostian orain dela gutxi izan den Carmen Riera idazleak aipatu duena, ez? Azken batean zoriontsuagoak izateko.

**MARIBI** Bai.

**Mª J.** Bai, bai. Noski.

**A.A.** Badirudi irakurtzen dutenak zoriontsuagoak direla irakurtzen ez dutenak baino.

**Mª J.** Bueno. Hori nik ez dakit baiezta... baiezta daitekeen baina... asmo horrekin... hau da, bai... zoriontsu izatea eta ondo sentitzea eta zerbait...

**************

**MARIBI** Oso inportantea da ezagutzea...

**Mª J.** Oso, oso.

**P.E.** Aipatu dudan, adibidez, Durangoko esperientzia, ez? Gazte batek ezagutzea zuzenki pertsona hori nik uste dut pauso bat dela.

**Mª J.** Bainan Durangon gutxi daude hasteko eta...

Bai, bai.

**Mª J.** Oso ezagunak.

**P.E.** Bai, bai. Baina horrelako esperientziak interesanteak dira eurentzako. Baina gero bai, eh? Nik azpimarratuko nuke irakurtzea zailagoa da entzutea eta ikustea baino eta gainera euskaraz egiten baduzu, nola hizkuntza bera hain normalizatua ez dagoen oraindik ere, ba, horrek zailtasun bat gehiago ematen du. Eta azken momentuan, esaten dugu, ba, ondo pasatzeko, eta zerbait nire burua janzteko ere, zein da errazago? Hau. Eta gero, non dago eskaintza gehiago? Ba, hemen bi badauzkat, bestean berrehun.

**MARIBI** Bai, baina hiztegiarekin irakurri behar dut edo hiztegirik gabe irakurri behar dut.

**P.E.** Bai. Eta baita ere. Eta zenbat aldiz behar duzu ondoan hiztegi bat. Bai, gazteleraz baita ere, baina bueno... euskaraz askoz gehiago.



Mª J. Eta gero literaturaren erabilera gure artean da erabilera horrela... helburu didaktiko baina hizkuntza janzteko erabili izan da edo hobetzeko bakarrik. Orduan literatura dago programa askotan sartuta, bai ertainetan baita OHOn bertan, ba, helburu horrekin. Hau da, egiten dira testu azterketa linguistikoak, erlatibozkoak-eta kuantifikatuz eta ahaztuz lehenengo eta behin literatura dela eta literatura idazten dela ondo pasatzeko eta irakurtzeko eta literarioki irakurtzeko eta gero Fakultatetan areagotu egiten da arazoa ze euskal munduarekin lotuta dauden ikasketetan literaturaren presentzia oso urria delako.

**************

Egin nituen bi inkestetan batzuk... Batean adoleszenteak edo ziren ertainetakoak hamalautik hemezortzi urte bitartekoak eta bigarrenak ziren unibertsitariak, ezta? hemezortzitik hogeita bikoak. Adoleszentzian abentura eta misterioa da nagusi, bereziki misterioa, Maribik esan duen bezala... Agatha Christie, Hitchcock, baina zaletasun hori mantendu egiten da unibertsitatean ere, baina askozaz ere testu konplexuagoak irakurriz, alegia, ba, irakurtzen dute El nombre de la rosa, misteriozkoa kontsidera daitekeena baina askozaz ere formalki landuagoa dena. Eta gero badago gauza kuriosoa, eta da, adinarekin nobela errealista eta historikoak askozaz ere gogokoago dituztela besteak baino. Eta gero dago emakumezkoen eta gizonezkoen arteko desberdintasun topiko/tipikoa. Hau da... Bai...

P.E. Eta tipiko hori egia dela atera zaizu?

Mª J. Bai. Baina horrek ez du esan nahi, alegia, bai, emakumezkook badirudi gehiago jotzen dugula nobela intimista, esistentzialistak eta horrelakoak irakurtzera eta gizonezkoak...

P.E. Baina irakurtzera gehiago besteak baino, gizonezkoek baino emakumezkoek?

Mª J. Bai. Hau da. Emakumezkoek gehiago irakurtzen dute. Hori nabarmen da, bereziki hogeita lau urte arte, adin horietan... emakumez... gehiengoa emakume... bai nabarmen nagusi dira, ezta? Baina eta gero badago zaletasun ezberdintasuna: gehiago jotzen dute beraiek, neskok, ba hori, nobela intimistetara eta mutilek ekintza nobeletara. Baina hori ez dagokio planteamentu, horrela, berez, emakumeok jotzen dugula sentimentu edo intimismora gehiago. Rolak, gizarte-rolekin dauka zerikusia. Emakumea gero eta irakurtzaleagoa denean eta gero eta parte edo... protagonismo gehiago daukanean gizartean bere irakurketa-gustuak gehiago hurbiltzen dira gizonezkoengana. Hau da, emakumeak lan egiten dutenak, formazio daukatenak eta irakurtzen dituzte nobela esistentzialista, intimistak baina baita ere abenturazkoak. Hurbildu egiten dira. Orduan, gizarte-rol batekin lotuta dago, ez berezko zaletasun batekin, eh? Eta hori bai dela guztiz adierazgarria.

**************

Emakume batzuk, Maribi, liburuaren itxurari garrantzi gehiago ematen zaio... gero eta gehiago edo...

MARIBI Bai, gero eta gehiago, ba... bueno, badira batzuk, eh, totxoak edo lodiak nahi dituztenak, baina denbora nola gutxi dagoen, ba, gero eta gehiago begiratzen zaio lodia den, mehea den, letra handia duen, ez duen, ze tipoko kolekziokoa den. Askotan ondo pasatzearekin lotua dagoen zera bat da, eh? Erraz irakurtzekoa, zeren liburu lodi bat hartzen baduzu, ba, bi ordu behar dituzu hasteko, ezta?

Mª J. Hor Estatu Batuetan izan zen kuriosoa El mundo de Sofia idatzi... Jostein Gaarder...

MARIBI Bai, hori fenomeno bat...

Mª J. Hori, fenomeno bat. Baina bigarren liburua... nola du izena bigarrenak? Eh...

MARIBI Ez dakit zer del solitario.

Mª J. Bai. Atera zenean ikusten denez amerikarrei ez zitzaien gustatu formatoa, eta orduan oso gutxi saldu zen.

**************

Zelig zen protagonista guztiz... hor zegoen traumatuta Moby Dick ez zuelako irakurri. Holako gauzak ere gaur egun pasatzen dira. Hau da, pekatu kontsideratzen da zenbait gauza, zenbait taldetan, ez irakurri izana. Eta hori niri ikasleen... Bueno, nire inkestetan isladatu zait. Hau da, nik ez dut irakurri liburu hori baina esan didate pekatu bat dela ez irakurri izana, ze irakurri behar da. Eta horrela ez goaz inora. Hor Pènnac-ek esan zuen, 92an Frantzian, dekalogo bat egin zuen, eta lehenengo eskubidea zen ez irakurtzeko eskubidea. Hau da, eh...

**************

MARIBI Uste duzu inportantea dela liburuaren taktoa?

| | |
|---|---|
| Mª J. | Bai. |
| MARIBI | Liburua ukitzea, irekitzea. |
| P.E. | Ez naiz zuri propaganda egiten, eh? Eske, hala ikusten dut. |
| MARIBI | Ez, ez, ez, ez. Hala da. Lehenengo orria irakurri. Konbentzitzen bazaitu lehenengo orriak hortxe nonbait ibiliko da gainontzekoa ere… |
| P.E. | Ze irudi dauden liburuetan eta momentu honetan argitaletxeek lan handia egin dute eta orduan ematen den itxura oso ona izaten da normalean. Irudien garrantzia ere handia dela, segun ze adinetan … |
| MARIBI | Bai, ukitu, eta… |
| Mª J. | Ukitu… |
| MARIBI | Oso gauza… |
| A.A. | Bai, ikusentzuleok, hontantxe utzi behar ditugu gure kontuak. Durangoko liburu-azkoka aitzakia hartuta, hementxe izan gara irakurketari eta irakurtzaletasunari buruzko gogoetan. Probetxuzko gertatu bazaizkizu, ba, eskerrak gure hirukoteari: Mari Jose Olaziregi, Maribi Legarra eta Pello Ellakuriari. Eta kitto, besterik ez. Adiorik gabe, gaur zortzi arte. Ondo izan. |

- Ondoren, ETBn gai horretaz egindako solasaldi baten zenbait pasarterekin egindako montajea ikus-entzungo duzue. Aurreko puntuan hizpide izan ditugun puntu berberak agertuko dira aditu horien komentarioetan ere. Esaten dituzten gauza guztiak aintzat hartuta, gaur egungo irakurle estandarraren gutxi gorabeherako profila osatzen ahaleginduko gara.

Itzul gaitezen, beraz, lehengo baieztapenetara, eta, ea bideo-pasartea ikus-entzun ahala, bigarren zutabea betetzen duzuen, irakurle estandar horren ezaugarriak ondo islatzen dituztenetan “bai” ipiniz, eta besteetan “ez”.

- Bukatzeko, konpara itzazu bi zutabeak (norberaren profila/irakurle estandarraren profila) eta, deigarrienak iruditzen zaizkizun puntuak kontuan hartuta, bizpahiru esalditxo idatzi, konklusio gisa.

3

- Ekar dezagun gogora berriro mahainguruan esandako hau: Kasu gehienetan gutxi irakurtzen dugu, gutxi ulertzen dugulako .

- Gauza bera gertatzen zaizu? Egin ezazu izaten dituzun zailtasunen zerrenda.

Adib. euskal kulturari buruzko aipamenek argumentuaren haria galarazten didate

___________________________________________

___________________________________________

___________________________________________

___________________________________________

- Irakurle denok erabiltzen ditugu trukoak hobeto ulertzeko irakurtzean. Hizkuntz ikasle hauentzat ere premiazkoak dira. Irakur ezazu zertaz baliatzen diren ulermen-zailtasunei aurre egiteko.

Nire ulertzeko teknika hauxe da: lehendabizi globalitatean ulertzen ahalegintzen naiz.Horrela ulertu ondoren,hobeto erreparatzen diet forma batzuei euren testuinguruan, hobeto ulertzeko edo zelan erabiltzen diren ikusteko.

Irakurtzen dudanean,lehenengo izenburuari eta argazkiei edo grafikoei...begiratzen diet,horrela badakit gutxi gorabehera zeri buruz arituko den.Hau da,ideia batekin hasten naiz irakurtzen,eta horrela errazago ulertzen dut.

Ni honetaz konturatu naiz:gaia zenbat eta ezagunagoa izan, hobeto ulertzen dudala. Horregatik,orain gai desberdinen inguruko informazioa edukitzen saiatzen naiz.

Hitz edo formaren bat ulertzen ez dudanean,beti saiatzen naiz deduzitzen. Horretarako, egoera eta testuinguru linguistikoa hartzen ditut kontuan.Hau da,hitza ulertzeko pistak bilatzen ditut.

Behar-beharrezkoa dut testuinguru esanguratsua, bestela ez dut ezer ulertzen.



Lehen zera uste nuen:irakurtzea bakarkako lana zela. Orain,aldiz,taldeka ere egin daitekeela konturatu naiz. Sarritan,hobeto ulertzen laguntzen dit ikaskideen arteko lan horrek.

Zerbait irakurtzen dudanean,ez diet ulertzen ez ditudan berba guztiei erreparatzen,ulertzeko garrantzitsuak direnei bakarrik.Irakurri dudana ulertzen ez badut,ordea,galdetu edo hiztegian begiratu egiten dut.

- Eta zuk erabiltzen al duzu horrelako estrategiaren bat ulertzeko? Zein? Eta besteren bat?

**B**

**Irakurketa estentsiborako liburu-zerrenda:**

Honako zerrenda hau proposamen bat baino ez duzue; aukeran duzue dagoen-dagoenean erabiltzea edota beste liburu batzuk hautatzea. Zerrendako liburuok egile askorenak eta estilo askotakoak dira, bertokoak zein atzerrikoak, azken urteotako produkzioaren adierazgarri.

## A) EGILEA

- Aranburu Altuna, L.
- Aristi, P.
- Arretxe, J.
- Atxaga, B
- Eman Bakia Baita
- Etxeberria, H.
- Irigoien, J.M.
- Iturbe, A.
- Iturralde, J.M.
- Kipling, R.
- London, J.
- Mendiguren, I.
- Mendiguren, X.
- Montoia, X.
- Orwell, G.
- Poe, E.A.
- Sagastizabal, J.
- Saizarbitoria, R.
- Stevenson, R.L.
- Ugalde, M.
- Wells, H. G.
- Zabaleta, I.

## B) IZENBURUA

- Itsasoak ez du esperantzarik
- Kcappo/ Irene/ Krisalida
- Tubabu
- Bi letter jaso nituen oso denbora gutxian/ Sugeak txoriari begiratzen dionean/ Gizona bere bakardadean
- Henry Bengoa Inventarium
- Mugetan
- Babilonia/ Consumatum est
- Ezer baino lehen
- Kilkirra eta roulota
- Oihanaren liburua
- Pirataren espedizioa
- Haltzak badu bihotzik
- Patakon
- Emakume biboteduna/ Non dago Stalin?
- Abereen etxaldea
- Urre-zomorroa
- Kutsidazu bidea, Ixabel
- Egunero hasten delako/ Bihotz bi
- Altxorraren uhartea
- Itzulera baten historia
- Munduen gerra
- 110. Street-eko geltokia



**4.1.** material osagarrian, Obabakoak: atzerrirako bidaia luzea ataza duzu. Bertan, B. Atxagari egindako elkarrizketa-zatia aurki dezakezu. Bideo-pasarte horretan, B. Atxagaren arrakastaren giltzaz dihardute.

**4.2.** material osagarrian, aipatutako elkarrizketaren beste zati bat duzu. Ataza labur horretan literaturaren eta musikaren arteko lotura aipatzen da. Honez gain, Jabier Muguruzak Atxagaren poesia bat kantatuko du.

**4.3.** material osagarrian, Obabakoak irakurtzeko aholkatzen zaie ikasleei Dastatu literatura atalaren barruan.